# SOKA MUTURRA

Danboliñian iriyarena
entzuten duten bezela,
ipurkonkorra astindutzera
plazan an dira berela;
oraiñ diyote festa eder au
galdu egiñ nai dutela,
iduritzen zait arrazoi gabe
dana guziyak daudela...
¿non kostilla bat ausi liteke
orren ederki bestela?

—

Je, je, egiñaz ez juana gatik
iri zarraren aurrera,
sokak artuta an botako du
zilipurdika lurrera;
chunbo aundi bat irten da ere
ezdute artzen charrera,
eta ¡demontre! kalluarekiñ
deskuidatutzen bazera,
kojo egiñaz oso kontentu
juango zerade echera.

—

Zure guztora nai dezunian
zanpatutzia sudurra,
zuaz korrika dakartenian
plazara soka muturra;
¿eta begi bat galduta ere
nork du sokaren bildurra?
leku frankotan ausiko dute
ederki bizkar ezurra,
¡baña plaz' ontan beziñ ederki!
¡ori bai dala gezurra!

—

Gero iriya sartzen danian
arkupietan barrena,
pillare kontra botako ditu
iru edo lau aurrena;
amar, amabi alkarren gainka
lurrian dira urrena,
boinak galduta guztiz ederki
zikindurikan diena,
amolatzeko ezta ez ori
dibertziyorik charrena.

—

Muturra beltza gona zikiñak
eta buruban zanbela,
plazan iriya baldiñ badabill
an da aurrian berela;
arrapatuta egingo diyo
begi onduan ubela,
eta lagunen erremeyua
ikusirikan orrela,
berialashen anishetia
edo kopa bat mishtela.

Arrapatuta golpatzen dana
iri zarraren gandikan,
zerekiñ badu Elgoibarren da
sendatutzera andikan;
chanpon batzubek ateratuko
ditu patrikeratikan,
baña plazara juanda ezbadu
ondo biurtzen ankikan,
etzi lezake, eztu izango
berriz alako maukikan.

—

Lastima bat da oraiñ eztala
usatzen plazan garrochik,
baratzuyakiñ igortzi eta
alako punta chorrochik;
iri mantsua zulatutzera
eun baziran atzetik,
ala askotan aiñ ondo bati
sartzen ziyoten begitik,
pañueluakiñ tapatu eta
bigaltzen zuten plazatik.

—

Iriya gana toliatzera
beteta dijuan ari,
zeladoriak galasitzia
gaizki billatzen det ori;
¿zeñi zer diyo egiña gatik
tarratara bat edo bi?
¡laja iriya chuliatutzen
guztora dabillenari,
arrapatuta gero atzetik
naiz illargiya ageri.

—

Plaza berritik San Bizentera
kaleri kale lertuak,
korrika gizon bizar zuriyak
ikusten dira aurtuak;
gero zokari tira ta tira
mutill jostallu eruak,
sartutzen dute beya entradan
ta partitubaz beruak,
¡etzuten susto charra eraman!
iru danbolinteruak.

—

Ni banintzake agintariya
gure thunthunen otsera,
¡joka iriyak! esango nuke
beti jayetik jayera;
beso bat edo beste austeko
nozki onelako era
ezta izaten, ala oiturak
uzten badira galtzera,
arrazoyakiñ esango dute
euskaldun onak ezgera.

*Victoriano Iraola.*

Imp, y lit, de V. Iraola.